# <u>JESUSEN AURKEZPENA</u>  (Kandelario)
## Biziera sagaratuaren eguna
## «Itxaropenean erromes eta itxaropenaren ereile».

Egun on guztioi:

Jesus tenpluan aurkeztu ebenekoa ospatzen dogu gaurko egunez. Simeonek eta Anak, Espiritu Santuak argituta, Salbatzailea ikusi eben danontzat Argi izateko Jainkoagandik etorren ume haregan.

Euren antzera, geu be Espiritu Santuak familia berean batuta, gure bizitzen argi dan Jesusenganako fedean berretsiko gara.

Gaur baita, Biziera Sagaratuaren Eguna da. Jubileu Urtean gagoz eta «*Itxaropenean erromes eta itxaropenaren ereile*» izatera deituak gara. Alkar lagundu behar dogula inor kanpoan itzi barik, itxaropenean eraginkor izanda.

Egin daigun otoitz Biziera Sagaratua aukeratu daben guztien alde, zerbitzatzen, maitatzen eta Barri Onaren argia zabaltzen jarraitu daien.

Eukaristian argi lez ikusi daigula eta argi izan gaitezala besteentzat. Guztiok bat eginda abestu daigun.

**GOAZEN ALKARTURIK** biztuta fedea
argitan zabalik maitasun bidea.

[1] *Entzun dezagun apaltasunez*
*entzun dezagun Jaunaren hitza*
*Bere hitzetan gure egia*
*gure indarra gure bizia.*

## Abadearen agurra

Jesus, Jauna, herri guztien argia, zuekin.

*Eleiztarrek kandelak biztuta eskuetan. Abadeak Meza-liburuko* ***oharra*** *irakurri ondoren,* ***bedeinkapen-otoitza*** *egingo dau eta ur bedeinkatuaz kandelak zipriztinduko ditu, bitartean abestu.*

**Abestia**:

**JESUS MUNDUKO ARGIA**
**Jesus zinezko egia. Jesus betiko bizia.**

*[1] Jesus Jainko gizona Zuri gure bizia*
*hartu gure Jaun ona gu garean guztia.*

*[2] Gure bihotz barruan biztu zure argia*
*gaitezen gu munduan argi Jainkoz betia.*

**AINTZA**…

## HITZAREN LITURGIA

**Ml. 3, 1-4**

Lehenengo irakurgaian, Malakias profetak gainerako profeta guztien misino eta egiteko bera erakusten dau: herriaren fedea eta itxaropena suspertu.

**23. Salmoa:**

Jesus da, Jerusalemgo eleizan sartzen dan Erregea, Salbatzailea. Goratu daigun Jesus gure Jauna.

**02/02_JAUNAREN AURKEZPENA** Sal 023 Udaia'24

Jaun ahal - guz- ti - du - na da E - rre - ge os - pe - tsu - a.

(Edo…)

***AINTZA JESUS ZURI BETI, ZU ZARA GURE ARGI.***

Ateburuok, zabaldu zaiteze,
zabaldu zaiteze, aspaldiko ateok,
badator-eta Errege ospetsua. R/.

Nor da Errege ospetsu hori?
Jauna da, indartsu eta ahaltsua,
Jauna, guduan ahaltsua. R/.

Ateburuak, zabaldu zaiteze,
zabaldu zaiteze, aspaldiko ateok,
badator-eta Errege ospetsua. R/.
Nor da Errege ospetsu hori?
Jaun ahalguztiduna,
bera da Errege ospetsua. R/.

**Heb 2,14-18**

Jaungoikoaren Semearen gizakundearen bidez, familia bakarra osatzen dogu.

**Ebanjelioa: Lk. 2, 22-40**

Lukasen Ebanjelio honetan, Malakias igarleak esan ebana beteko da. Mesias Eleiza-Nagusian sartuko ebela eta Judako ta Israeleko opari lez Jaunari aurkeztua izango zala.

Ebanjelioa entzuteko prestatuz, abestu daigun:

*"Aleluia".*

**JAINKO HERRIAREN OTOITZA**

Jesusek, munduko argia izateko deitu deusku; baina bere laguntza barik guk ezer ezin dogu egin. Beragan uste oso-osoa izanik, aurkeztu deioguzan gure eskariak Jainko Aitari.

—Eleiza Amaren alde: Espiritu Santuaren ausardiaz beterik, JESUS dala gizakia argitzen dauan argi bakarra mundu guztian aldarrikatu daian. Egin daigun otoitz

—Biziera Sagaratuen alde. Benetako itxaropenaren zeinu izan daitezan munduaren erdian. Egin daigun otoitz

—Nagusien alde. Simeonek eta Anak lez, Jaunaren hurkotasuna eta maitasuna sentitu daiezan. Egin daigun otoitz

—Gu guztion alde. Espiritu Santuak gugan isurtzen dauan maitasunaren eraginez bat eginda bizi izan gaitezan. Egin daigun otoitz

Jaungoiko Aita ona, zeure Semea herrien argia eta giza familiaren aintza bialdu deuskuzu; entzun gure otoitza eta zabaldu argi hori gizadi osoari. Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

**JAUNARTZEAN**

**GURE ONDOAN, JAUNA**, egon zaitez beti;
Zu zara gure bide eta gure bizi.

[1] Zu zara, Jauna, Zu gure Artzain eta gu zure artalde.
Nora-ezean ibilten gara ardi gaixook Zu gabe.

[2] Zuk ezagutzen gaituzu danok Zu zara gure Artzain on
Zure ondoan alkar maitatuz gaitezela beti egon.

**AGURRA**

Andra Mariak, Jesus umea Eleizan sartzean, **munduko argia eta salbamena aurkeztu deusku**. Guk ere bere antzera, Kristo egiazko argia iragarri daigun.

**Abestia:**

**JESUS MUNDUKO ARGIA**
**Jesus zinezko egia. Jesus betiko bizia.**

*[1] Jesus Jainko gizona Zuri gure bizia*
*hartu gure Jaun ona gu garean guztia.*

*[2] Gure bihotz barruan biztu zure argia*
*gaitezen gu munduan argi Jainkoz betia.*